# urtarrila

Beste behin, Bilboko kaleak kolapsatu genituen. Beste behin Bilbo gainezka zegoen. Euskal gizarteak eta kanpotarrek, eskubide urraketa berberak bizi dituztenek, bete zuten Bilbo. Bertan izan ginen badakigulako estatuek entzuten gaituztela, nahiz eta, entzungorrarena egin eta badakigulako ikusten gaituztela, nahiz eta, oso gutxi edo ia batere ikusiko ez baluten bezala egin. Beste behin Bilbon izan ginen, han egotea beharrezkoa egin zutelako.

Jada hamabi hilabete igaro dira, eta hamabi hilabete hauetan estatuek ez dute inongo pausurik eman, ez bada salbuespeneko espetxe politika mantendu eta bere ondorioak jasaten ditugun guztion sufrimenduak areagotzeko. Hamasei euskal preso politikori bizi osorako espetxe zigorra aplikatu diete urte honetan zehar, horietako hiruri hilabete honetan bertan. Gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten hamahiru presok espetxean jarraitzen dute, eta 606 presotatik 587k sakabankaturik jarraitzen dute.

606

Baina, ez nahastu, urtea ez dugu pasa den urtea hasi genuen bezala hasi. Ez gaude egoera berdinean, zeren denbora aurrera joan ahala, ardurak ere gehiago baitira.

Jada urtebete da hilabetekari hau martxan jarri zela. Izan ere, duela urtebete 2012ko urtarrilaren 7an bizitako unearen ostean, ezinbestekotzat jotzen genuen euskal errepresaliatu politikoen inguruan zeuden albisteen, ekimenen, gertaeren berri eman behar geniola gizarteari, berriak onak ala txarrak izan, gizarteak jakin behar zuen zein zen guk eta gure senide eta lagunek bizi genuen egoera.

.

# sakabanaketa

## 606 euskal preso politiko 85 espetxetan sakabanatuta

- 443 preso espainiar estatuko 45 espetxetan sakabanatuta
- 134 preso frantziar estatuko 32 espetxetan sakabanatuta
- 8 preso Euskal Herriko 3 espetxetan daude
- 4 preso Ingalaterrako espetxe batean
- Preso 1 Ipar Irlandako espetxe batean
- Preso 1 Eskoziako espetxe batean
- Preso 1 Portugalgo espetxe batean
- Preso 1 Brasilgo espetxe batean
- Preso 1 etxean preso dago, Italian, Erroman
- 11 preso espetxeratze arinduan, pairatzen dituzten gaixotasunak direla eta
- Preso 1 Autunen (Frantzian) dago, konfinatua

| | |
|---|---|
| **73** euskal preso | Euskal Herritik **1000 eta 1.100** kilometrotara dauden espetxeetan |
| **181** euskal preso | Euskal Herritik **800 eta 1.000** kilometrotara dauden espetxeetan |
| **141** euskal preso | Euskal Herritik **600 eta 800** kilometrotara dauden espetxeetan |
| **99** euskal preso | Euskal Herritik **400 eta 600** kilometrotara dauden espetxeetan |
| **87** euskal preso | Euskal Herritik **400** kilometro kilometrotara dauden espetxeetan |
| euskal preso bat | Euskal Herritik **900** kilometrotara **konfinatua** |
| **9** euskal preso | Euskal Herritik urrun dauden 6 herrialdetako espetxeetan |

# gaixo larriak

Gaixo larrien inguruan ez bestelako gertaerarik gertatu hilabete honetan zehar, baina, hau ez da albiste ona gaixo larriei dagokienez. Izan ere, beraien kasuan, denbora da soberan ez dutena. Espetxean igarotzen duten egun bakoitzak izugarrizko eragina du eurengan, eta dute inondik inora hobera egiten.

13

Gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten hamahiru presoek espetxean jarraitzen dute, asistentzia mediku egokia jaso gabe, euren osasunarentzat beharrezkoak diren neurriak hartu gabe. Txus Martinek bakarturik jarraitzen du Zaballako espetxean, bere egoerarentzat gomendatzen denaren aurkakoa eginez. Konfiantzazko pertsonarik ondoan ez duela.

Aitzol Gogorzak badu kidea bere ondoan, Basauriko espetxean dago, baina, bere egoerak ez du hobera egiten. Eta ez du hobera egingo espetxean mantentzen duten bitartean. Oso gogorra da espetxean bizitzen ari direna.Txus Martinek, Aitzol Gogorzak, Gotzone Lopez de Luzuriagak, Jose Angel Bigurik, Gari Arruartek, Iñaki Errok, Josetxo Arizkurenek, Isidro Garaldek, Jose Ramon Lopez de Abetxukok, Inma Berriozabalek, Iñaki Etxeberriak, Jesus Mari Mendinuetak eta Jose Miguel Etxeandiak etxean behar dute izan. (eranskinetan ikus daiteke gaixo larrien zerrenda zehaztasun gehiagorekin).

.

# salbuespen neurriak

## 197/2006 doktrinaren aplikazioa
## Baldintzapeko askatasuna

Hilabete honetan ere beste hiru euskal preso politikori aplikatu diete bizi osorako espetxe zigorra, eta ondorioz, 91 dira jada 197/2006 doktrinaren bitartez euren zigorra luzatu dieten euskal preso politikoak. 91 hauetatik 71k oraindik preso jarraitzen dute (erantsitako zerrendan ikus daitekeen bezala).

71

Bestalde, estatu frantsesak Jakes Esnal, Frederik Haranburu eta Jon Kepa Paroti bizi osorako espetxe zigorra mantentzen jarraitzen du, sistematikoki euren baldintzapeko askatasunak ukatzen jarraitzen duen bitartean.

Beste behin, Auzitegi Gorenaren 197/2006 doktrinaren aplikazioak hiru euskal preso politikoren zigorrak luzatu ditu hil honetan. Alde batetik, **Jesus Mari Zabarte** arrasatearrari aplikatu diote doktrina. Bera egun Jaengo espetxean dago, eta jada 29 urte daramatza preso bigarren aldiz atxilotu zutenetik. Irteera data 2013ko martxoaren 29rako zuen finkatua, baina, 197/2006 doktrina aplikatuta , zigorra 2015era arte luzatu diote. Bestetik, **Xabin Usandizaga** oñatiarrari ere aplikatu diote doktrina. 1997an espetxeratu zuten, eta egun Jaengo espetxean dago. Irteera data izan aurretik aplikatu diote 197/2006 doktrina, eta orain ere ez diote irteera datarik finkatu. **Andoni Cabello** urbinarraren kasuan, berriz, bera 1991an espetxeratua izan zen eta egun Castello I espetxean dago. Irteera data 2013ko martxoaren 21erako bazuen ere, doktrina aplikatu diote, eta zigorra 2021era arte luzatu diote.

Doktrinaren aplikazioak eragiten duen egoera irregularraren eta presoei eragiten dien babesgabetasunaz gain, bereziki aipagarria da doktrina azken orduan aplikatzeak izugarrizko krudeltasuna gehitzen diotela bai presoek eta baita euren senideek jada bizi behar duten egoera gogor honi. Honela presoak eta gu, euren senide eta lagunak, bizi osorako zigorrera kondenatzen gaituzte.

132

Euskal preso politikoei aplikatzen zaien beste salbuespeneko neurri bat da baldintzapeko askatasunaren ukatzea da. 132 euskal preso politikok zigorraren 2/3 edo 3/4ak (ezarria duen kode penalaren arabera) beteta izan arren, preso jarraitzen dute bai estatu espainiarrean eta baita frantziarrean ere, aske egon beharko luketen arren. (zerrenda eranskinetan aurki daiteke).

# espetxeetan

## eskubide urraketak bestelako gertakariak

### Isolamendua

Bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotza euskal preso politikoen bereizgarri bat da. Isolamendua edo bakartzea egoera oso zehatzetara zuzendutako neurria bada ere, espetxe arautegian (zigor puntual gisako neurritzat hartzen dena), gure senide eta lagunen kasuan ohiko edota behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Esan bezala, euskal presoen kasuan isolamendua edo mitarda maiz ezartzen den zigor bat da. Baina zenbait kasutan presoak agian isolamenduko moduluan egon ez arren bakarrik egoten dira, hau da, beste kiderik edo euskal preso politikorik gabe egoten dira, eta kasu hauetan bakartuak daudela esaten da.

| Euskal Heria | Zaballa | Txus Martin |
|---|---|---|
| Espainiar estatuan | León | Sara Majarenas |
| | Córdoba | Sergio Polo (isolamenduan) |
| | Estremera | Sonia Jacinto |
| | Soto del Real | Ibai Peña |
| Frantziar estatuan | Joux La Ville | Marian Aramendi |
| | Joux La Ville | Julen Eizagirre |
| | Uzerche | Mattin Olzomendi |
| | Tarascon | Ibai Sueskun |
| | Muret Seysses | J. Carlos Esteve |

**Fleury espetxean** dauden 24 euskal preso politikoak mitardean (isolamenduan) egon dira 18 egunez, bi euskal preso politikok funtzionario batekin izandako eztabaidaren ondoren. Izan ere, urtarrilaren 7an, Jose Javier Oses bere ziegan zegoela funtzionario batek berarekin izandako jarrera txarra zela eta, funtzionarioari kexatu zitzaion, bere lana jarrera on batekin ere egin zezakeela esanaz. Funtzionarioak oso gaizki hartu zuen Osesen iruzkina. Une horretan, Aitor Elizaran Osesen ziegaren paretik pasa eta egoera ikusita, tentsio une hori lasaitzera joan zen. Orduan, funtzionarioa urduriago jarri zen eta une batean Elizarani ukabilkada bat ematera joan zen. Elizaranek funtzionarioaren ukabilkada saihestea lortu zuen, baina, ondorioz, funtzionarioa lurrera erori zen. Hau ikusita ziegara funtzionario gehiago etorri ziren, eta Elizaran lurrean jarri zuten.

Bera jotzen saiatu zen funtzionarioak pare bat ostikada ere eman zizkion aurpegian. Gauzak honela, Oses eta Elizaran 18 egunetarako mitardera eraman zituzten. Eta elkartasunez Fleuryn dauden beste 22 euskal preso politikoak ere mitardean sartu ziren.

**Puerto III espetxean**, Xabier Rey presoa 30 eguneko zigorra betetzeko isolamendura eraman zuten, 15 funtzionarioren artean, ziegaren miaketa batean topatu zioten soka bat dela eta. Soka egunero normaltasun osoz erabiltzen zuen Reyek kirola egiteko, inondik inora ezkutatu gabe. Rey isolamendura eman eta hurrengo egunean, Oskar Barrerasek Reyrengatik galdetu zuen, baina, ez zioten erantzun; beraz, ziegara sartzea ukatu eta isolamendura eraman zuten bera ere.

## Miaketak

Miaketa zorrotzak ziegetan: **Puerto III, Cáceres, Mansilla, Curtis, Castello II, Daroca**

Dilijentzietako leku aldatze batean **Bea Etxeberria**k Guardia Zibilen miaketa bortitza jasan behar izan zuen. Ukimenezko miaketa gogorra egin zioten, eta biluztera behartu zuten.

**Huelva II espetxean**, utarrilaren 5ean, Aritz Arginzonizek bikotearekin aurrez aurreko bisita bat izan ondoren, biluztu egin zuten eta miaketa egin zioten. Urtarrilaren 10ean, Aritzi jakinarazi zioten sei hilabetez debekatuak izango zituela aurrez aurreko bisitak bikotearekin, miaketa egin zioten gelan ustez mugikor bat aurkitu zutelako. Beste dokumentu batean bateria ere aurkitu ziotela jakinarazio zioten.

## Senideak, bisitarik gabe

**St. Martin de Ré espetxean**, abenduaren 8an, preso sozial batek patioa blokeatu zuen bera bisitatzera zetozen senideak berandu etorri zirelako. Kideen komunikatzeko ordua iritsi zenean, funtzionarioek jakinarazi zieten patioa blokeatuta zegoela eta ez zela bisitarik egongo. Bi kideek bisitak galdu zituzten, euren senideak kanpoan zain egon arren.

**Villepinte espetxean**, abendu amaieran, Ibon Goieaskoetxearen senideak bisita gabe geratu ziren, arkuak zarata atera zuelako

# berri gehiago

**Badajozko espetxean**, azken aldian segurtasun arduradunarekin bildu arren, eta hauek hainbat konpromiso hartu arren, bizi baldintzek okerrera egin dute: ezin dute kirol aktibitateetara atera, bisiten ordutegi mugatuak dituzte, bi modulutan banatuta egotetik hirutan banatuta egotera pasa dira.

**Dueñasko espetxean**, bi hilero ziega aldaketak egiten hasi zaizkie.

**Villabonako espetxean**, Alex Bustinduy abenduaren 29an espetxera iritsi zenean, ez zioten sarrera deia egiten utzi, bere ordez gizarte laguntzaileak deitu

**Tarascon**en, Ibai Sueskunek abendutik asteazkenero janariari uko egiten dio, bere bakartzea salatzeko.

# U-12



## lortuko dugu!!!



Herrirak Herri Mobilizazio Orokorra deitu zuen urtarrilaren 12rako Bilbon. Bertan 115.000 pertsona bildu ginen. Mirentxineko furgoneten eta Herriraren autobusen urtero bezala, senide eta lagunon zutabeek ireki zuten bidea. Guretzat oso garrantzitsua da zita hau, bertan dauden pertsona guztien babesa sentitzen baitugu, eta aurrera egiteko indarrak hartzen baititugu!

## esker mila, Euskal Herria!!

## etxean nahi ditugu!








# askatasunak

**Aitor Kortazar** (Laudio), abenduaren 28an. Zigorra beteta.

**Imanol Gonzalez** (Karrantza), urtarrilaren 4an. 30 000 euroko bermea ordainduta.

**Markel Ormazabal** (Donostia), urtarrilaren 12n. Zigorra beteta.

**Liher Rodrigez** (Lekeitio), urtarrilaren 12an. Bermepean.

**Pello Zelarain** (Villabona), urtarrilaren 17an. Zigorra beteta.

**Xabi Agirre** (Gasteiz), urtarrilaren 23an.

# espetxeratzeak

**Andoni Lariz** (Markina-Xemein), urtarrilaren 11n. Borgoñan atxilotu zuten, eta hasiera batean Fleuryn espetxeratu bazuten ere, egun Boys D'Arcy espetxean dago.

**Urtzi Etxeberria** (Donostia), urtarrilaren 11n, Borgoñan atxilotu zuten, eta La Santen espetxeratu dute.

**Joseba Gotzon Vizan Gonzalez** (Basauri), urtarrilaren 18an atxilotu zuten Rio de Janeiron.

**Arkaitz Anza** (Orereta), urtarrilaren 19an atxilotu zuten, eta Martutenen espetxeratu dute.

**Xabier Lujanbio** (Orereta), urtarrilaren 19an atxilotu zuten, eta Martutenen espetxeratu dute.

**Maialen Linazasoro** (Orereta), urtarrilaren 19an atxilotu zuten, eta Martutenen espetxeratu dute.

# leku aldatzeak

## destinu aldaketak

### Espainiar estatua

**Maialen Zuazo** (Bilbo), Soto del Real-etik Avila-ra.
**Josu Rodrigez** (Algorta), Basauri-tik Soria-ra.
**Alex Bustindui** (Bilbo), Basauri-tik Villabona-ra.
**Oskarbi Jauregi eta bere umea** (Zaldibia), Aranjuez-etik Valencia-ra.
**Beñat Aginagalde** (Hernani), espainiar estatutik (behin-behineko estradiziotik) Meaux Chauconin-era.
**Jon Rubenach** (Iruñea), espainiar estatutik (behin-behineko estradiziotik) Saint Martin de Ré-ra.

### Frantziar estatua

**Cristina Goirizelaia** (Arrasate), Bapaume-tik Fresnes-era eta Fresnes-etik espainiar estatu-ra (behin-behineko estradizioa)..
**Aitor Kortazar** (Laudio), Clairvaux-etik Fresnes-era.
**Oihana Mardaras** (Bilbo), Fresnes-etik Versailles-era.
**Naia Lacroix** (Senpere), Chalons-etik Versailles-era.
**Andoni Lariz** (Markina-Xemein), Fleury-tik Bois D' Arcy-ra.
**Aingeru Cardaño** (Bilbo), Fleury-tik espainiar estatura (estatu frantseseko kondena bete du).
**Eneko Bilbao** (Bilbo), Muret Seysses-tik espainiar estatura (estatu frantseseko kondena bete du).
**Aitzol Iriondo** (Donostia), Bois D'Arcy-tik La Sante-ra.

## dilijentziak

### ESPAINIAR ESTATUA

Dani Pastor (Bilbo), Puerto III-tik Navalcarnero-ra.
Xabier Garcia Gaztelu (Galdakao), Puerto III-tik Navalcarnero-ra.
Iñigo Guridi (Tolosa), Puerto II-tik Valdemoro-ra.
Juancar Iglesias (Donostia), Villena-tik Valdemoro-ra.

### FRANTZIAR ESTATUA

Marixol Iparragirre (Eskoriatza), Fresnes-etik Lyon Corbas-era.
Mikel Albisu (Donostia), Fresnes-etik Lyon Crobas-era

# hilabeteko gaia

## hator, hator, neska-mutil etxera...




1999. urtean musika gogoko zuen lagun talde bat, errepresaliatuen aldeko kontzertu bat antolatzeko helburuarekin lanean jarri zen. Orduan ezin zuten imajinatu ere egin Hatortxu Rock gaur egungo jaialdi erraldoia bilakatuko zenik. Urtetik urtera erreferente bilakatuz joan zen; Iruñean hasieran, berehala Nafarroan, gero Euskal Herrian eta egun, Estatu mailan ere bere lekua egina dauka Hatortxu Rockek.

Urte guzti hauetan eskarmentu faltari, Iruñerriko herri askotan jarri dizkieten oztopo eta trabei, eguraldi txarrari (Hatortxu 6an eta 11an izandako elurteak ahaztezinak dira), baldintza hoberenetan haien lana garatzeko mota guztietako baliabide faltari eta abarri aurre egin behar izan diote. Eta hala eta guztiz ere, hor jarraitzen dute. Gaur egun, errepresaliatuen alde bataz beste 5.000 pertsona biltzen diren ekimen gutxi daude eta ilusioz eta gogotsu antolatzen da Hatortxu urtero. Hori bai, Hatortxukoek beti errepikatzen dute haien esperantza zein den: Hatortxu Rock berri bat egin behar ez izatea errepresaliatu guztiak etxean daudelako. Horregatik haien lema: **hator hator neska-mutil etxera!**

Orain arte 14 urtetan 15 kontzertu antolatu dituzte. Denak Nafarroan izan dira baina ez pentsa guztiak leku berean egin dituztenik, ez pentsa erraza izan denik... Hatortxu Rock zazpi lekutan egin behar izan dute eta traba ugari jarri dizkiete lehen momentutik. Ongi dakigu denek, UPNk agintzen duen lurraldea dela Nafarroa eta Hatortxuri ezarritako persekuzioak ez du etenik izan bere ibilbide osoan. Hala ere, borrokatuz eta gogor lan eginez traba guztiak gainditzen dituzte eta zorionez huts egiten ez duen hitzordua dugu Hatortxurekin urtero.

Egin dituzten kontzertu guztien artean, esan dezakegu Hatortxu Rock 10a jaialdi bereziena eta garrantzitsuena izan zela; 2009. urteko ekainean egin zen Lakuntzan, Nafarroan, eta bertan asteburu batean banaturik 70 talde inguruk jo zuten inoiz egin den errepresaliatuen aldeko elkartasunezko kontzerturik handienean (Topaguneak txiki geratu ziren!!!). Era berean, Euskal Herritik ezezik estatutik etorritako milaka pertsonek, Lakuntzako plazak, kaleak eta zelaiak leporaino bete zituzten. **Errepresaliatuengatik eta errepresaliatuentzako** burutu zen jaialdi zoragarria izan zen, Beriainen magalean egin zena, eta bertan sortutako berotasun itzela nola elkartasun uholdea urrunen dauden zoko ilunenetan sentitu zuten. Mundiala izan zen! Horren adibide Euskal Herri osoan zabaldu zen argazkia izan zen,



abioneta batetik ateratakoa; bertan milaka pertsonek osatu zuten mosaikoa ikus daiteke, denen artean aski ezaguna den banderola erraldoia irudikatu zuten. Errepresaliatuak etxera!

Hatortxu Rocken lan egiten duten **boluntarioei** buruz aipamen berezia egin nahiko genuke: lehenengo urtetik, eguberri oro, ehundaka pertsona murgildu zen Hatortxu Rockek eskatzen zituen lanetan. Argi esan dezakegu boluntariorik gabe Hatortxu ez zela posible izango. Haiek, boluntarioak, jaialdi honen arima dira, eta borondatezko lana da kontzertu honen filosofia edo funtsa. Urteak iragan eta jaialdia hazten joan zen heinean, gero eta jende gehiago inplikatzeko beharra areagotzen joan zen. Hau horrela izanda, pixkanaka gero eta jende gehiago hurbildu zen Hatortxuren antolaketara, maila guztietako inplikazioarekin: batzuk ordu batzuk, beste batzuk egun osoa, haiek barran tragoak ateratzen, besteak sukaldean bokatak egiten, beste haiek garbiketa lanetan... Bakoitza berean, dena ongi antolatua eta denon artean ekipo fina osatuz aurrera ateratzen dira jaialdi paregabe hauek. Eta ez hori bakarrik, urtero hobetzen doa Hatortxu Rock, akatsetatik ikasiz eta lanerako giro paregabea mantenduz.

Musika taldeek eta haien managerrek eta bulegoek ere konpromisoaren lurralde honetan bere lekua izaten dute. Bertan jotzen duten taldeek ongi dakite Hatortxu Rock jaialdi berezia dela, **badakite errepresaliatuen aldeko ekimen garrantzitsu** bat dela. Eta haiek ere bere aportazioa egiten diote konpromisoz osatzen den errepresaliatuen aldeko amaraun erraldoi honi.
Hatortxu Rock jaialdian Euskal Herriko talde askok jo dute. Huts egiteko beldurrik gabe esan dezakegu bertan hazi direla gaur egun goi mailako taldeak diren batzuk: Marea, Berri Txarrak... Estatu mailan lehen lerroan dauden taldeek ere bere lekua izan dute jaialdi zoragarri honetan. Beraz ukaezina da gaur egun Hatortxu Rock hitzordu garrantzitsua dela panorama musikalean eta ez hori bakarrik, gure herriko kulturaren bultzatzaile amorratua bilakatu dela esan dezakegu. Iruñean, Nafarroan, Euskal Herrian eta Estatu mailan ezaguna egin da orain arte, baina, zein izango da Hatortxu Rocken muga?




Non izango du muga Hatortxuk jorratzen duen elkartasunak? Ziur ezin dugula imajinatu ere egin, 1999.urtean lagun talde hark honaino iritsiko zirenik imajinatzen ez zuten bezala. Gertutik jarraituko dugu bilakaera. Aupa Hatortxu Rock!

**Denon artean, hator hator neska-mutil etxera!**

Hatortxu Rock antolatzaileak

# etxerat

**Urtarrilak 27.** Etxerat elkarteko senide eta lagunok **prentsaurreko bat** eskaini genuen, Donostiako Anoeta Hotelean, abenduaren **29an burutzekoa genuen ekimenaren berri emateko.**

**Abenduak 29.** Etxerat elkartea osatzen dugun senide eta lagun guztiok Euskal Selekzioak Anoeta estadioan zuen partidua zela eta, **ESAITek antolatutako ekimenean parte hartu genuen** eta elkarretaratze bat egin genuen, **urtarrilaren 12ko mobilizaziora dei egiteko.** Egun borobila, senide askoren parte hartzearekin, baina, zoritxarrez egun horretan ere gure senide eta lagunek bizi duten errealitatea isilarazteko ahalegina egin zuten. Izan ere, lehenagotik hitz eginda eta adostuta genuen, Etxerat elkartea osatzen dugun errepresaliatu politikoen senide eta lagunak Anoetako estadiora sartuko ginela, partiduaren aurretik, bertan itzuli bat emateko. Baina, azken egunean jaso genuen debekua, azkenean ez ziguten estadiora sartzen utzi eta elkarretaratze bat burutu genuen estadioaren kanpoan.

**Urtarrilak 6**. Urtero bezala, Etxerat elkarteak preso eta iheslariekiko elkartasuna oinarri duen **bertso saio** ederra antolatu zuen **Oiartzunen**, urtarrilaren 6an, Elorsoro kiroldegian. Aurtengo bertso saioan parte hartu zuten bertsolariak honakoak izan ziren: Amets Arzallus, Julio Soto, Andoni Egaña, Maialen Lujanbio, Jon Maia, Hodei Barroso, Arkaitz Oiartzabal "Xamoa" eta Igor Elorza. Gai jartzailea, berriz, Unai Elizasu izan zen.

**Urtarrilak 8.** Etxeratek **2012. urteko espetxe politikaren balantzea** egin zuen Bilboko Abando Hotelean emandako prentsaurreko batean. Bertan 2012. urteak utzitako zenbakien eta datuen balantzea egin genuen. Eta prentsaurrekoan presente egon ziren, 2012. urtean izandako gertakari nagusietako batzuk bizi izan zituzten sei senide: Mikel Bienzobas (funtzionario baten arduragabekeriagatik ia odolustu zen Jon Bienzobas presoaren anaia), Mila Izeta (Mikel Egibar presoaren emaztea, udan istripu larri bat jasan zuen bere seme-alabekin batera), Asier Goieaskotxea (funtzionarioen jipoia jasan zuen Ibonen eta Eneko presoen anaia), Nagore Lopez de Luzuriaga (Gotzone Lopez de Luzuriaga gaixo larriaren iloba), Alejandro Ugalde (17 urte preso daramatzan Andoni Ugalderen aita), eta Jabier Uribetxebarria (gaixo larria izanik eta iskanbila askoren ondoren, etxeratua izan zen Iosu Uribetxebarriaren anaia).

# agenda

## Herrira

**I. Nazio Batzarra. URTARRILAREN 26an** (larunbatean) **FICOBA**n (Irunen) goizeko 9:30etan izango da.

## Harrera Taldea

**Aurkezpena**. Hitzaldia eta lunxa. **OTSAILAREN 8an** (ostiralean), arratsaldeko 19:30etan, Ateka Beltz Kultur Gunean, **Leitzan.**

## Etxerat

**Batzar Nazionala**. Etxerat elkartean XII. Batzar Nazionalerako prestaketa lanetan gabiltza. Batzarra **OTSAILAREN 17an** (igandean) **LEIOAKO** (Bizkaia) **CAMPUSEKO ARETO NAGUSIAN** (Aula Magnan) goizeko 10.00etan izango da.

# gaixotasun larriak dituzten presoak

**Jesus Mª MARTIN HERNANDO** (Basauri) : Zaballa. 1960. urtean jaioa. 2002an atxilotua. Nahasmen eskizo-afektiboa delirio osagarriarekin.

**Iñaki ERRO ZAZU** (Iruñea) : 1960an jaioa. 1987an atxilotua. SCASEST erako Kardiopatia iskemiko larria. Bihotz kateterismoa: 3 stent ezarria ditu. **197/2006 doktrina ezarrita.**

**Josetxo ARIZKUREN RUIZ** (Iruñea) : A Lama (A Coruña). 1958an jaioa. 1999an atxilotua. Kardiopatia iskemiko larria. Kateterismoa: Stent hodi batean.

**Isidro GARALDE BEDIALAUNETA** (Ondarroa): Puerto I (Cádiz). 1951ean jaioa. 1985ean atxilotua. Kardiopatia iskemikoa- (SCASEST erakoa) Prostatako hiperplasia benignoa, Kataratak. **197/2006 doktrina ezarrita.**

**Jose Ramon LOPEZ DE ABETXUKO LIKINIANO** (Gasteiz): Villabona (Asturias). 1949an jaioa. 1989an atxilotua. Bradikardia sintomatikoa. Fibrilazio aurikularra, Prostatako adenoma.

**Gotzone LOPEZ DE LUZURIAGA FERNANDEZ** (Agurain): Martutene1959an jaioa. 1989an atxilotua. Bularreko minbizia. **197/2006 doktrina ezarrita.**

**Jose Angel BIGURI CAMINO** (Menagarai) : Martutene. 1955ean jaioa. 1989an atxilotua. Prostatako adenokartzinoma (minbizia).

**Inmaculada BERRIOZABAL BERNAS** (Zegama/Elorrio): A Lama (Pontevedra). 1951ean jaioa. 2009an atxilotua. Psoriasi artropatia, Diabetesa (DM-II), Diabetes oina, hipertentsioa, azkazaletako psoriasia, Asma bronkiala, belaunetako protesia.

**Gari ARRUARTE SANTA CRUZ** (Hernani): Almeria. Nacido en 1980. 1980an jaioa. 2003an atxilotua. Espondilitisa.

**Iñaki ETXEBERRIA MARTIN** (Iruñea). Topas (Salamanca). Nacido en 1964. Detenido en 1996. Miopía Magna de larga evolución. Hemorragia Retiniana en el Ojo Derecho, Ojo Izquierdo presenta Afáquia. Glaucoma bilateral. Riesgo evidente de ceguera

**Jesus Mª MENDINUETA FLORES** (Arbizu): Zuera (Zaragoza). 1968an jaioa. 1991ean atxilotua. Gaixotasun erreumatikoa, afektazio sistemikoarekin. Hori dela eta, aurrealdeko uveitisa . Bi disko-eten (lepoaldean eta gerrialdean, lepoko mina eta ziatikarekin) . Sinupatia aldi errepikariak. **197/2006 doktrina ezarrita**

**Aitzol GOGORZA OTAEGI** (Orereta) - Basauri. 1975ean jaioa. 1999an atxilotua. Nahaste obsesibo konpultsiboa.

**Jose Miguel ETXEANDIA MEABE** (Larrabetzu) - Topas (Salamanca).1960an jaioa. 2003an atxilotua. Nahaste obsesibo konpultsiboa, Hepatitis C.

# 197/2006 doktrina

## espetxean: 71

| IZEN ABIZENA | ESPETXEAN ZENBAT URTE | IRTEERA DATA | IRTEERA DATA DOKTRINA APLIKATU ONDOREN |
|---|---|---|---|
| Jon Aginagalde Urrestarazu | 29 | 2010/07/04 | 2014 |
| Iñigo Akaiturri Irazabal | 22 | 2010/04/15 | 2021 |
| Juan Carlos Arruti Aizpitarte | 24 | 2009/03/05 | 2019 |
| Joseba Artola Ibarretxe | 27 | 2006/05/18 | 2016 |
| Luis Mari Azkargorta Belategi | 25 | 2007/10/08 | 2018 |
| Santos Berganza Zendegi | 24 | 2011/06/15 | 2019 |
| Jose Angel Biguri Camino | 24 | 2010/06/09 | 2019 |
| Jesus Bollada Alvarez | 26 | 2006/05/20 | 2017 |
| Fernando Del Olmo Vega | 22 | 2012/02/01 | 2020 |
| Ines Del Rio Prada | 26 | 2008/07/05 | 2017 |
| Juan Ignacio Delgado Goñi | 22 | 2012/02/19 | 2021 |
| Josu Dz. De Heredia R. De Arbulu | 27 | 2009/10/15 | 2016 |
| Iñaki Erro Zazu | 26 | 2010/05/16 | 2017 |
| Jose Etxeberria Pascual | 22 | 2010/03/26 | 2021 |
| Elias Fernandez Castañares | 27 | 2011/05/27 | 2016 |
| Iñaki Fdz De Larrinoa P. De Luko | 24 | 2008/10/01 | 2019 |
| Nicolas Francisco Rodriguez | 26 | 2009/05/29 | 2017 |
| Juan Mari Gabirondo Agote | 27 | 2007/12/01 | 2016 |
| Isidro Garalde Bedialauneta | 28 | 2010/02/02 | 2020 |
| Xabier Goldaraz Aldaia | 21 | 2011/09/17 | 2022 |
| Patxi Gomez Lopez | 22 | 2006/04/29 | 2018 |
| Raul Ibañez Diez | 22 | 2010/10/08 | 2021 |
| Juan Jose Legorburu Geregiaga | 27 | 2009/04/02 | 2016 |
| Gotzone Lopez De Luzuriaga | 24 | 2010/08/11 | 2019 |
| Antxon Lopez Ruiz | 25 | 2006/07/24 | 2017 |
| Francisco Lujanbio Galdeano | 29 | 2008/02/17 | 2014 |
| Jose Ramon Martinez de la Fuente | 28 | 2009/01/01 | 2020 |
| Jabi Martinez Izagirre | 20 | 2010/09/22 | 2022 |
| Jesus Mari Mendinueta Flores | 22 | 2011/05/04 | 2021 |
| Inmaculada Noble Goikoetxea | 26 | 2008/11/08 | 2017 |

| IZEN ABIZENA | ESPETXEAN ZENBAT URTE | IRTEERA DATA | IRTEERA DATA DOKTRINA APLIKATU ONDOREN |
|---|---|---|---|
| Peio Odriozola Agirre | 25 | 2008/07/02 | 2018 |
| Iñaki Orotegi Otxandorena | 27 | 2008/12/17 | 2016 |
| Imma Pacho Martin | 22 | 2008/03/11 | 2021 |
| Juan Manuel Piriz Lopez | 29 | 2009/03/01 | 2014 |
| Iñaki Pujana Alberdi | 26 | 2009/02/23 | 2021 |
| Kepa Rezabal Zurutuza | 26 | 2006/12/30 | 2016 |
| Maitane Sagastume Arrieta | 22 | 2009/07/26 | 2021 |
| Jokin Sancho Biurrun | 24 | 2009/12/08 | 2019 |
| Kepa Solana Arrondo | 22 | 2009/10/10 | 2021 |
| Txomin Troitiño Arranz | 26 | 2006/05/05 | 2017 |
| Antton Troitiño Arranz | 26 | 2011/02/04 | 2017 |
| Mitxel Turrientes Ramirez | 27 | 2009/04/10 | 2016 |
| Jokin Urain Larrañaga | 27 | 2009/08/29 | 2016 |
| Iñaki Urdiain Ziriza | 24 | 2009/10/09 | 2019 |
| Jon Ander Urkizu Ormazabal | 27 | 2007/07/22 | 2016 |
| Maritxu Uzkudun Etxenagusia | 22 | 2009/08/27 | 2021 |
| Jose Felix Zabarte Jainaga | 27 | 2008/04/11 | 2015 |
| Gonzalo Rodriguez Cordero | 19 | 2013/07/11 | 2023 |
| Iñaki Zugadi Garcia | 20 | 2012/04/30 | 2022 |
| Juan Jose Zubieta Zubeldia | 21 | 2012/04/30 | 2021 |
| Josune Onaindia Susaeta | 20 | 2012/06/09 | 2022 |
| Gabriel Zabala Erasun | 20 | 2013/09/27 | 2023 |
| Ramon Uribe Navarro | 19 | 2012/12/03 | 2024 |
| Juan Ramon Rojo Gonzalez | 21 | 2012/12/03 | 2021 |
| Andoni Cabello Pérez | 22 | 2013/03/21 | 2021 |
| Jesus Mari Zabarte Arregi | 22 | 2013/03/29 | 2015 |
| Andoni Cabello Pérez | 22 | 2012/03/21 | 2021 |
| Josu Amantes Arnaiz | 21 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| Iñaki Arakama Mendia | 16 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |

| IZEN ABIZENA | ESPETXEAN ZENBAT URTE | IRTEERA DATA | IRTEERA DATA DOKTRINA APLIKATU ONDOREN |
|---|---|---|---|
| Santiago Arrozpide Sarasola | 26 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| Jose Maria Beristain Urbieta | 24 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| Oskar Cadenas Lorente | 17 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| Jorge Gonzalez Endemaño | 18 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| Manu Gonzalez Rodriguez | 24 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| Unai Parot Navarro | 23 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| Lurdes Txurruka Madinabeitia | 19 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| Jose Javier Zabaleta Elosegi | 23 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| Asier Ormazabal Lizeaga | 16 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| German Rubenach Roiz | 23 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| Juan Lorenzo Lasa Mitxelena | 21 | 2012/11/26 | Finkatu gabe |
| Xabin Usandizaga Galarraga | 16 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| **Etxean preso** | | | |
| Bautista Barandalla Iriarte | 23 | 2009/06/30 | 2020 |

# zigorraren 2/3-3/4 beteta duten presoak

## ESTATU ESPAÑOLA

ABAD SAN PEDRO, ENDIKA
AGIRRE LETE, JUAN LUIS
ALMARAZ LARRAÑAGA, AGUSTIN
ALONSO ALVAREZ, RAUL
ALONSO CURIECES,ANUNTZI
ALONSO RUBIO, IÑAKI
APARICIO BENITO, JON KOLDO
APEZTEGIA JAKA ,JOXE KARLOS
ARANBURU MUGURUZA, XABIER
ARISTI ETXAIDE, PATXI
ARKAUZ ARANA, JOSU
ARREGI ERROSTARBE, JOSEBA
ARRIAGA ARRUABARRENA, RUFINO
ARRIETA, ISMAEL
ASENSIO MILLAN, PAUL
ASIBAR BARRUTIA BIXENTE
ASKASIBAR GARITANO, MIKEL
BALANZATEGI AGIRRE, XABIER
BALERDI IBARGUREN, XABIER
BALERDI ITURRALDE, JUAN CARLOS
BEASKOA RODRIGUEZ ,JON
BEAUMONT BARBERENA, JOSU
BELLON BLANCO, ARKAITZ
BELOKI RESA, ELENA
BENAITO VILLAGARCIA, MIGUEL A.
BERISTAIN URIZARBARRENA, IKER
BEROIZ ZUBIZARRETA ANDONI
BETOLAZA VILAGRASA, GORKA
BILBAO BEASKOETXEA, IÑAKI
BRAVO MAESTROJUAN, JOSU
CAÑAS CARTON, IÑAKI
CASTRO SARRIEGI, ALFONSO
COLOMA UGARTEMENDIA, ASIER
DORRONSORO MALAXETXEBARRIA ,J
EGIGUREN ENBEITIA, OLATZ
ERNAGA ESNOZ, JOSEPA
ERRAZTI ELORZA, JOKIN
ESKISABEL BARANDIARAN ANITZ
ESNAL, JUANTXU
ESPARZA ORTEGA JOSEBA
ESTONBA ITURRIZA, ARATZ
ETXEANDIA MEABE, JOSE M.
ETXEBARRIA MARTIN, IÑAKI
FAGOAGA IGANTZI, IÑAKI
FERNANDEZ BERNALES, JULEN
GABIOLA GOIOGANA, ANDONI
GALARZA QUIRCE, LUIS ANGEL
GAÑAN RAMIRO, GAIZKA
GANDIAGA IBARZABAL ESTEBE
GARAIZAR SAN MARTIN, NEREA
GARCIA MIJANGOS, JOSE
GARCIA RAZKIN, SERGIO
GARCIA SERTUTXA, GORKA
GAZTELU OTXANDORENA JOSE M.
GOIENETXE ALONSO, IÑAKI
GOMEZ LARRAÑAGA, ARATZ
GONZALEZ PAVON, JOSEBA
GONZALEZ RODRIGUEZ, MANUEL
GONZALO CASAL, IÑAKI
GRAMONT, DABID
GUEMES OIARBIDE, ITXASO
GUNDIN MAGUREGI, PATXI
HERNAEZ BOLINAGA AILANDE
HIDALGO LERTXUNDI, AIMAR
IBARRA IZURIETA BIGARREN
PARRAGIRRE ARRETXEA, IMANOL
IRASTORZA OTEGI, AINHOA
JUARISTI ARRIETA, XABIN
KORTA CARRION, MIKEL
LARRINAGA MARTIN, JULEN
LARRINAGA RODRIGUEZ, ASIER
LEGAZ IRURETA, ARMANDO
LEJARZEGI OLABARRIETA ENDIKA
LESENDE ALDEKOA, TXOMIN
LOIZAGA LOINAZ, IÑAKI
LIZARRALDE PALACIOS ANA
LOPEZ DE ABETXUKO, JOSE R.
MAJARENAS IBARRETA, SARA
MARKEZ DEL FRESNO, KEPA
MUJIKA GARMENDIA, FRANCISKO
OIARTZABAL UBIERNA, ANARTZ
OLAIZ RODRIGUEZ, JORJE
OLANO OLANO JUAN, MARIA
OLARRA AGIRIANO JOXE MARI
ORMAZABAL GAZTAÑAGA, JON M.
OSTOLAZA IKARAN ENEKO
OTAZUA URRESTI, IÑIGO
PASCUAL MUNETA GARIKOITZ
PEREZ DE ANUZITA, EDUARDO
PRIETO JURADO, SEBASTIAN
RUIZ JASO, ZIGOR
SADABA MERINO FRANCISCO J.
SAENZ OLARRA BALBINO
SAEZ ARRIETA, ARKAITZ
SALEGI GARCIA, OROITZ
SALUTREGI MENTXAKA JABIER
SAN EPIFANIO SAN PEDRO, FELIPE
TAPIA ZULAIKA, ASIER
TERRONES ARRETE, JAGOBA
TOBALINA RODRIGUEZ, JUAN
TRENOR DICENTA KARLOS
TODA IGLESIA, TERESA
TXIMENO INZA, XABIER
UGALDE ZUBIRI, ANDONI
UGARTE VILLAR, XABIER
URIZAR DE PAZ, GERMAN
URIZAR MURGOITIO, JOSE GABRIEL
URRA GURIDI, KEPA
VARGAS OLASOLO MIKEL
VIRUMBRALES AMENABAR, ASIER
ZARRABE ELKOROIBIDE, MIKEL
ZELARAIN ERRAZTI, JULEN
ZIGANDA SARRATEA, JOSU
ZUBIA URRUTIA, IKER
ZUBIZARRETA BALBOA, KEPA
ZULAIKA AMUTXASTEGI, GORKA
ZENARRUZABEITIA, ZALOA
ZUBIAGA LAZKANO, XEBER

## ESTATU FRANTSESA

FREDERIK HARANBURU
IÑIGO ELIZEGI
JACKES ESNAL
JUAN CARLOS ESTEVEZ PAZ
MAITE JUARROS
.JON KIRRU OTXOANTESANA
JON PAROT
BEÑAT SANSEBASTIAN.
MARINA BERNADO BONADA
MATTIN OLZOMENDI.
GALDER CORNAGO
ITXASO LEGORBURU
IBAI SUESKUN
HARRIET AGIRRE GARCIA